# Notre Dameko atrioko kripta arkeologikoa

**Notre Dameko atrioko kripta arkeologikoa** (**Antzinako Pariseko kripta** edo **Pariseko kripta arkeologikoa** bezala ere ezaguna) Pariseko 1750 aurretiko eraikinen aztarnak arkeologikoak jasotzen dituen espazio bat da.

**Notre Dameko atrioko kripta arkeologikoa**

Crypte archéologique du parvis Notre-Dame

museums of the city of Paris

Irudi gehiago

**Kokapena**

| | |
|---|---|
| **Herrialdea** | Frantzia |
| **Eskualdea** | Île-de-France |
| **Public institution of intermunicipal cooperation with own taxation** | Paris Handiko metropolia |
| **Hiria** | Paris |
| **Municipal arrondissement** | Parisko 4. barrutia |
| **Kokapen fisikoa** | Parvis Notre-Dame – Place Jean-Paul-II (en) |
| **Koordenatuak** | 48° 51′ 13″ N, 2° 20′ 51″ E (https://tools.wmflabs.org/geohack/geohack.php?pagename=Notre_Dameko_atrioko_kripta_arkeologikoa&language=eu&params=48.8536_N_2.3475_E_region:_type:landmark_scale:_dim:_globe:) |

**Historia eta erabilera**

| | |
|---|---|
| **Irekiera** | 1980 |
| **Inaugurazioa** | 1980 |
| **Bisitariak urtean** | 150.852 |

Webgune ofiziala (http://crypte.paris.fr/)

## Eduki-taula



## Kokapena

Kripta arkeologikoa Pariseko Notre Dame katedralaren portadaren parean kokatua dago. Bertan sartzeko Place du Parvis de Notre-Dame 1ean dagoen sarrera batetik sartu behar da. Sarrera honek metro sarrera itxura du eta, nahiz eta jende asko ibili, ez dago oso ondo seinaleztatua. Polizia Prefekturaren ondoan kokatua dago, eta bisita guztian zehar Nostre Dameko plazaren azpialdetik ibil daiteke.

## Historia

Notre-Dame plazako kripta arkeologikoak garai ezberdinetako aztarnak gordetzen ditu, antzinarorik (gela galo-erromatarra), Erdi Arotik pasaz (Neuve Notre Dame kalearen erdi aroko aztarnak) eta XIX. mendera arte (Enfants-Trouvés umezurtz-etxearen oinarriak, estolda Haussmaniarren ibilbidea...)

Zonalde honetan indusketa kanpaina ezberdinak egin dira, horien artean bi dira aipagarrienak, hauek utzi baitituzten erromatar eta goi erdi aroko aztarnak agerian: lehena, 1847koa, Théodore Vaquerrek zuzendua (antzinako Paris aurkituko dute berarekin) eta, bigarrena, 1965etik 1967ra bitartean Michel Fleuryrekin (Vieux Parise batzordeko lehendakariordea eta, garai hartan, Île-de-France eskualdeko Antzinate Historikoko zuzendaria).

### Aztarnak garaiaka

Erromatar Goi Inperioko aztarnen artean , bizilekuen hainbat aztarna topa daitezke, Génius jainkoaren brontzezko estatua erromatar bat aurkitu zen, kaiako eta Lutezia zubiko zatiak, kontrahorma garrantzitsu batez gain (azken honi oraindik ez zaio jakin interpretazio bat ematen).

Behe Inperioari dagokionez, K.o. IV. Mendeko defentsa harresi baten zati aurki daiteke. Hau harlanduzko bloke handiz egina dago, hauetako batzuk antzinako eraikinetakoak izanik. Harresi honen oinarrian “altxor” bat ere topatu zen 800 txanpon baino gehiagorekin.

Garai berean irla berreraikia izan zen. Horrela, hipokaustoa zuen etxe bat topatzen da, hau da,erromatarrek terma eta bainuetxe publikoetan erabiltzen zuten berogailu sistema bat.

Goi Erdi Aroko eraikuntzak basilika forma duen eraikin handi baten oinarriek osatzen dute, honek bost nabe ditu. Aztarna hauek Saint-Etienne basilika bezala interpretatu dira. Hau VI. Mendean eraiki zen Txildeberto I.arengatik, Klovis I.aren semea. 36 metroko luzera du eta 70 metroetako altuera, Galiako eraikin handienetariko bat zela agerian utziz.

## Gaur egungo egoera

Gaur egun edonork bisita dezake kripta, bertako irekiera eta itxiera ordutegia errespetatuz (hau da, 10:00etatik 18:00etara, astelehenetan itxia).Bertaratzeko garrai sistema ezberdinak gomendatzen dira:

- Metroa: Cité, Saint-Michel
- RER: Saint-Michel - Notre-Dame
- Autobusa: 24, 25, 27 eta 96 lineak

30 eta 90 minutu bitartean irauten duen bisitan zehar aurretik ezarritako ibilbide bat jarraitzen da, informazio panel eta maketa ezberdinek laguntzen dutelarik aztrnen interpretazioan. Aztarnak egoera onean mantentzen dira. Ibilbidearen amaieran souvenirren denda bat topa daiteke, non liburu, postalak edo mapak eros daitezken.

## Loturak

- Wikimedia Commons Notre Dameko kripta arkeologikoari buruzko multimedia kategoria du.
- Pariseko kripta arkeologikoa (http://www.crypte.paris.fr/es/la-cripta)

